# SANTIAGO APOSTOLUA

## Sarrera oharra

Senideok: Gure zaindariaren eguna ospatzeko alkartu gara. Ezinbestekoa dogu JAI egitea, eta eguneroko bizitzako gora-beherak alde batera iztea. Baina, kontuz! Jainkoak nahi dauan atsedenak eta jaiak danentzakoa izan behar dau. Eta hainbeste dagoz gure inguruan krisi-aldi larri honek jota nora-ezean dabiltzanak. Gogoan izango doguz gure otoitzean eta baita gure eskeintzan ere: Diru-batzean eurekin partekatuko dogu gure poza eta jai-giroa, batzen dana Caritasen bitartez eurengana helduazoz.

Liturgiak Santiago apostolua ospatzera gonbidatzen gaitu, eta goazen bere eskutik Jesusen jarraitzaile izatea zer dan bilatzera eta ospatzera, eta Jainkoari eskerrak emotera apostoluei esker garalako Jesusen jarraitzaile. Eskatu daigun ez dakiguzala falta gidariak, autorleak eta hain beharrezko doguzan profetak.



## Sarrera abestia

**GOAZEN GUZTIOK BATERA**
**Jaunarekin egotera.**
**Goazen guztiok batera**
**Jaunarekin egotera.**

*¹ Pozik alkartu gaitezen*
*Aita bai dogu laguntzen.*
*² Seme-alaba bezela*
*zaindu gagizuz Zuk, Jauna.*

## AGURRA

† Aitaren eta Semearen eta Espiritu Santuaren izenean.
*- Amen.*
† Jaungoiko gure Aitaren eta Jesukristo gure Jaunaren grazia eta bakea zuekin.
*- Bedeinkatua Jaungoikoa, Jesukristo gure Jaunaren Aita.*

**Damu otoitza**
† Sarriegitan erabilten dogu siniskerea alkarrengandik bereizteko eta ez alkarren zerbitzura jarteko. Damutu gaitezan:

—Jesus Jauna, apostoluengan aukeraketa sinboliko**a** egin zenduna, *erruki, Jauna*.
—Jesus Jauna, zure jarraitzaileak erreinuaren mezulari e**gi**ten dozuzana, *Kristo, erruki*.
—Jesus Jauna, zerbitzari izateko aukeratzen eta bi**al**tzen gaituzuna, *erruki, Jauna*.

† Erruki dakigula…

**Aintza**

**Aintza zeruetan Jaungoikoari**

***AINTZA ZURI, JAUNA TA ESKERRAK ZURI***

eta bakea lurrean haren gogoko gizakiei.
Hain handi ta eder zaitugulako,
gora zu!, bedeinkatua zu!,
gorespen zuri, auzpez agur, eskerrak zuri. *

Jainko Jauna, zeruko errege,
Jaungoiko Aita ahalguztiduna.

Jauna, Seme bakar, Jesukristo;
Jainko Jauna, Jainkoaren Bildots, Aitaren Seme. *

Zeuk kentzen dozu munduko pekatua: erruki, Jauna.
Zeuk kentzen dozu munduko pekatua: entzun gure deia.
Aitaren eskoialdean jarririk zagoz zu: erruki, Jauna.*
Zeu bakarrik santua; zeu bakarrik Jauna;
zeu bakarrik goi-goikoa, Jesukristo.
Espiritu Santuarekin, Jainko Aitaren argitan.
- Amen.

## OTOITZA

Jainko ahalguztidun betikoa, Santiago izan zan
Ebanjelioagaitik bere odola isuri eban lehenengo apostolua;
egizu, haren odol-isurtzeaz sendotu dadila zure Elizea,
eta haren zaindaritzapean dagoan zure herriak,
zintzo jarraitu deiola beti Kristo Jaunari.
Zurekin eta Espiritu santuarekin batean.

**Lehenengo irakurgaiari oharra** (Ap Eg 4, 33; 5,12.27-33; 12,2)
*Ezeren autorle izateko ondo ezagutu behar da; eta autortzekoagaz bat eginda egon. Begira zelangoa dan apostoluen autorra: bildur bakoa, bulartsua, deigarria..., bizitza osoa jokoan jarten dauana. Eredugarria!*

## Ap Eg 4, 33; 5,12.27-33; 12,2
## Apostoluen Eginetatik

Egun hareetan, apostoluek adoretsu emoten eben

Jesus Jaunaren biztueraren autormena, eta hareen eskuz herrian mirari eta harrigarri asko egiten ziran. Batzar Nagusiaren aurrera ekarri ebezan apostoluak, eta abade nagusiak honan itandu eutsen: «Ez geuntsuen, bada, zorrotz agindu, Horren izenean ez irakasteko? Zuok, barriz, Jerusalen osoa bete dozue zeuon irakatsiz, eta gizon horren odolaren erantzukizuna geuri ezarri nahi deuskuzue».
Pedrok eta apostoluek erantzun eben: «Jaungoikoaren esana egin behar da lehenengo, ez gizonena. Gure asaben Jaungoikoak biztu egin eban, zuok habetik dingilizka hil zenduen Jesus. Jaungoikoak goratu egin dau bere eskumaz, eta Buruzagi eta Salbatzaile egin, Israeli bihotz-barritzea eta pekatuen parkamena emoteko. Geu gara gauza horreen testigu, baita Jaungoikoak bere esana egiten dabenei emoten deutsen Espiritu Santua ere».
Erantzun honek hasarre bizitan jarri zituan batzarrekoak, eta apostoluak hiltea erabagi eben. Eta Herodes erregeak Joanen anaia zan Santiagori ezpataz samea ebagi eutson.

**Erantzun salmoa (66):**

***Ene Jainko: ospatu zagiezala herriek…***




**Sal 66**

Erruki bekigu Jainkoa, bedeinkatu gaizala,
agertu deigula aurpegi alaia;
ezagutu dagien lurrean zure bidea,
herri guztietan Zugandiko salbamena. R/.

Poztu beitez kantari atzerriak,
zuzenbidez daroazulako izadia;
zintzo dozuzalako gidatzen herriak,
eta zaintzen lurrean atzerriak. R/.

**Bigarren irakurgaiari oharra** (2Kor 4, 7-15)
*Onura preziatua dogu sinismena, eta egoereak irakasten deusku gurea benetako sinismena dan ala siniskeria. Sinismena zaintzen, ospatzen eta zabaltzen dauana zoriontsua da.*

## San Paulo apostoluak Korintotarrei

Senideok: Ondasun hau buztinezko ontzitan darabilgu, honenbesteko indarra Jaungoikoagandik dala agertu dadin, eta ez geugandik. Alde guztietatik estutzen gaitue, baina ez itoten; larri gagoz, baina ez etsita; erasopean bai, baina ez eskutik itzita; lurrera botaten gaitue, baina ez hilten. Edonon eta beti Jesusen heriotzea daroagu gorputzean, Jesusen bizia ere gure gorputzean agertu dadin.

Bizi garean bitartean, beti heriotzara eroaten gaitue Jesusegatik; Jesusen bizia ere agertu dadin gure izate hilkor honetan. Holan, gugan heriotzeak dihardu; zuokan, barriz, biziak.

Liburu Santuak honan dino: «Sinistu dot, eta horregatik berba egin dot». Eta geuk ere sinismen espiritu bera daukagula, sinisten dogu, eta horregatik berba egiten dogu; jakinik Jesus Jauna biztu dauanak Berak biztuko gaituala geu ere Jesusegaz, eta Bere ondoan ipiniko, zuekin batera. Hau guzti hau, zuen onerako da; grazidunak ugaritzen dirala, hareen esker ona ere ugariagoa izan dadin, Jaungoikoaren aintzarako.

*Jaunak esana*

**Ebanjelioari oharra** (Mk 20, 20-28)
*Jainkoaren aurrean eskale jarten gara. Baina, ba dakigu, gero, zer eskatzen dogun? Hasiko bagina Espiritua eskatzetik... Egin deiogun harrerea ebanjelioari Aleluia abestuz, zutunik.*

**† Jesukristoren ebanjelioa san Markosen liburutik**

Aldi haretan, Zebedeotarren ama urreratu jakon Jesusi bere semeakaz, eta aurrean auspeztu zan, eskabide bat egiteko. Jesusek itandu eutson: «Zer nahi dozu?» Eta berak: «Jesarriazo daizuzala nire seme biok, bata zure eskumatan eta bestea zure ezkerretan, zure erreinuan».

Eta Jesusek: «Ez dakizue zer eskatzen dozuen. Gauza al zaree zuek, Nik edango dodan kaliza edateko?» Hareek: «Bai, ba gara gauza!» Berak orduan: «Nire kaliza edan, bai, edango dozue; baina nire ezker eskuman jesarte hori ez dago nire eskuetan inori emotea; hori nire Aitak erabagiten dauan hareentzat da».

Beste hamarrak, hori entzutean, biziro hasarre jarri ziran anaia biekin. Jesusek, barriz, Beragana batu eta esan eutsen: «Badakizue herrietako agintariek gogor hartzen dabela menpean herria, eta handikiek azpian hartzen dabela. Ez bedi izan holan zuen artean; bestetara baino: zuen artean handi izan nahi dauana, bego zuen zerbitzari; eta zuen artean lehenengo izan nahi dauana, bego zuen menpeko, Gizonaren Semea ere ez da etorri besteen zerbitzuak hartzera, besteak zerbitzera baino, eta bere bizia askoren erospen saritzat emotera».

**HITZALDIA**

Santiago eguneko hitzaldia gertatzerakoan burura jatortazan arazoak eta galderak hainbat eta hainbat dira:

*Zelan hartu ete dogu sinismena? Zelan landu ete dogu? Zelan ospatzen ete dogu alkarregaz? Zelan eskuratzen ete deutsegu gure seme-alabei edo ondorengoei?*...

Santiago ez da San Inaziogaz lehian jarri behar dogun santua, bata gailegoena dala eta bestea dala euskaldunona esanaz, haren egunean ez dagoala mezea entzuteko "obligazinorik" amaitzeko. Zelango *txikikerietan* galtzen garan!

Ba dagoz sakonagotik egin geikezan galderak, Santiagogan apostolua ikusiz, eta Jesusen autorle edo testigu izatearren bere odola isurteraino bizi izan dauala autorletza hori kontuan izanik. Ba gara gu, geure berbeaz eta bizitzaz, odola isurteraino ez bada ere, Jesus Jaunaren autorle? Egiten dogu

autorletza hori, besterik ez bada, geure etxean edo geure parrokian? Holango galderek *zirikatu* egiten gaitue eta urduri jarri, ezta?

Ba, ez deusku besterik esan lehenengo irakurgaiak: «*Apostoluek adoretsu emoten eben Jesus Jaunaren biztuerearen autormena, eta hareen eskuz herrian mirari eta harrigarri asko egiten ziran*». Horixe da, senideok, kristau izatea: Jesusen jarraitzaile, haren biztuerearen autorle… Espiritu Santuaren esanetara.

Pentsatzekoa da ea "*buztinezko ontzietan daroagula hain ondasun ederra*" esan deuskun Paulori jarraituta, ontzia apurtu ez ete jakun, eta hor zehar galdu ez dogun sinismena, guk besterik uste izan arren.

Gu ez gara *Jesusen autorle sutsuak*, ezta? *Jesusen biztuereak* —berba hori behin eta barriro erabili arren, batez ere hiletetan— *ez dauka eraginik gure eguneroko bizitzan,* ezta? *Sinismena autortzearren, bizitza galtzeraino* ez ginateke helduko, ezta? Hortxe dago gure jokabidea: apenas lantzen dogu gure sinismena: *ez dogu ebanjelioa irakurteko ohiturarik; ez eta mezatan entzundako irakurgaiak hausnartzekorik; edo sinismen hori elikatzeko, beharrezko dogula ospatzea, alkarbanantzea, jaunartzea eta pobretasunean bizi izatea ere ez dogu uste…*

Eta, behar bada, Elizearen zoriak ez gaitu kezkatu ere egiten, ez dogulako gure sinismenaren altzo eta euskarri ikusten. Ez ete da, gero, gure sinismena *kontsumo-iturri* bat, gure seme-alabengan ezelango

eraginik ez daukana, geugan ere *ezkutuko* eta *autortu-ezineko* eraginen bat baino ez daualako? Ona litzateke hautsok astintzea Santiagoren apostolutza ospatzean.

Jesusek dei egin eutsen, eta haren jarraitzaile egin ziran; eta jarraitzaileen artean leku euken andrazkoek ere; eta ez bakarrik garbitzaile, sukaldari edo errekadista huts lez, benetako autorle lez baino. Orduko ezein taldetan ikusten ez zana!

Hori kontuan hartuta, ulertu daigun gure sinismena, ez Jainkoari gure ezinetan laguntza eskatzeko era bat (argi dinosku ebanjelioak *zer eskatzen dogun ez dakigula-ta*), Jesus, berari jarraitzean, ezagutzeko era lez baino, eta bere autorle izateko amesean, eta taldean, emakumeak ere tarteko dirala, elikatzeko, ospatzeko eta alkarregaz bizi izateko eta alkar maitatzeko amesean.

Beharrezko doguz, senideok, "Biblia-Taldeak", "Otoitz-Taldeak"… Beharrezko doguz bakarreko otoitzaldiak, eta ebanjelio irakurketak… Beharrezko dogu ikastea eta mezatan *egoteaz* ez konformatzea… Beharrezko dogu Elizearen zoriaz arduratzea, eta bakotxak bere zerbitzu lekua aurkitzea.

Horixe da Santiago apostoluaren liturgia ospatzeak eskeintzen deuskuna. Zein izango da gure erantzuna? Ez daitela izan, behintzat, santuak alkarren arteko lehian jartea, Jesusen jarraitzaile izatean gure eredu ikustea baino.

**SINISTEN DOT…**

—Sinisten dot Jaungoiko Aita ahalguztidun
zeru-lurren egilea;
Sinisten dot haren Seme bakar, Jesukristo, gure Jauna,
Espiritu Santuaren egitez sortu,
eta Maria Birjineagandik jaio zana.

—Sinisten dot Espiritu Santua,
Eliza santu, katolikua, santuen alkartasuna,
pekatuen parkamena, haragiaren biztuerea
eta betiko bizitzea. Amen.

**ESKARIAK**

† Jainkoak bere erregetzearen autorle (testigu) izateko aukeratzen gaitu bere Semearen jarraitzaile. Esker onez egin deioguzan gure eskariak:

—Apostoluen oinarri gainean eraikitzen dan Eliza honen alde: gaurko mundu eta egoera honetan izan daiten profetikoa eta ilunpeetan argi… *Eskatzen deutsugu, Jauna, -Aita* zaitugulako.

—Izan daigun guztiok argi Jesusek danoi egiten deuskula dei bere jarraitzaile eta Jainkoaren erregetzearen autorle izatera… *Eskatzen deutsugu, Jauna, -Aita* zaitugulako.

—Gure lehentasunen artean pobreak, bazterreratuak, gutxietsiak, erbesteratu eta espetxeratuak izan daitezan, eta erregetzearen poza eroan ahal izan deiegun… *Eskatzen deutsugu, Jauna, -Aita* zaitugulako.

—Aintzat hartua ez dan, edo bazterreratua dan emakumeak bere duintasunezko lekua izan daian gure Eliza honetan… *Eskatzen deutsugu, Jauna, -Aita* zaitugulako.

—Eukaristiarako alkartu garenok gure sinismena aintzat hartzen, lantzen, ospatzen eta alkarbanantzen ikasi daigun… *Eskatzen deutsugu, Jauna, -Aita* zaitugulako.

† Jainko maitalea, alkarren zerbitzari nahi gaituzuna: emoiguzu apostolu kemena zure Semearen autorle izateko gaur eta hemen. Jesukristo gure Jaun berberaren bitartez.

—Amen.

**Eske-batzerako oharra**

Zaindariaren egunean, jai eginez, gure inguruan beharrizanean dagozenak izan nahi doguz gogoan. Orain egingo dogun eske-batzea, ba, Caritaserako izango da, behartsuen ondoan lanean jarraitu daian. Eskertzekoa da zuen eskuzabaltasuna.

## EUKARISTIAREN LITURGIA

**Eskeintza**

Bedeinkatua zu, Jauna, zeru-lurren Jainkoa, zeure esku zabaletik hartu ditugu orain ekarri deutsuguzan ogi-ardauok, lurraren indarrak eta gizakiaren lanak sortuak: honeexek egingo jakuz biziaren ogi ta betiko zorionaren edari.

*- **Bedeinkatua zu, Jauna, orain eta beti**.*

Senideok: egin daigun otoitz, guztiok batean, Eliza

osoaren oparia Jaungoikoari eskeintzerakoan.

*- **Jainkoa goresteko eta gizakiak salbatzeko**.*

**Oparien gaineko otoitza**
Garbitu gagizuz, Jauna,
zure Semearen nekaldiko bateo salbagarriaz;
Kristoren kaliza edateko
lehenengo izan zan Santiago apostoluaren jaiegunean
opari atsegingarria eskeini deizugun.
Jesukristo.

**Prefazioa**

V./ Jauna zuekin R./ Eta zure espirituarekin
V./ Gora bihotzak R./ Jaunagan daukaguz
V./ Eskerrak Jaungoiko gure Jaunari
R./ Egoki da eta zuzen.

Egoki da, bai, eta zuzen
non-nahi ta beti zuri eskerrak emotea,
Jauna, Aita guztiz santu,
Jaungoiko ahalguztidun, betiko Artzain Horri.

Santiagok, Kristoren testigu kutunak iragarri eban
zure Semearen heriotza ta biztueratik datorren erreinua,
eta bera izan zan apostoluen artean lehenengoa
Jaunaren kaliza edaten;
beronen zaindari-laguntzaz
gordeten da sinismena gure herrietan,
eta zabaltzen lur osoan;
bera dabe lagun zuganako bidean erromes doazenek,
zugana heldu arte,
Jesukristo gure Jaunaren bitartez.

Horregaitik, Jauna, aingeru guztiekin batean
orain eta beti goresten zaitugu,
fede apalez abesten deutsugula.

**SANTU, SANTU, SANTUA**

Santu, Santu, Santua
diren guztien Jainko Jauna.
Zeru-lurrak beterik daukaz zure diztirak.
Hosanna zeru goienetan!
Bedeinkatua Jaunaren izenean datorrena.
Hosanna zeru-goienetan!

## III. EUKARISTI OTOITZA

Santu zara, bai, Jauna,
eta diren guztiek emoten deutsue behar dan gorespena.
Zure Seme Jesukristo gure Jaunaren bitartez,
eta Espiritu Santuaren indarrez,
Zeuk biziazoten dituzu guztiak eta santutzen,
eta zeuk diharduzu, beti ta beti, zure herria batzen,
eguzki alde batetik besteraino opari garbia eskeini dakizun.

Apalik, beraz, Jauna, eskatzen deutsugu:
santu egin daizuzala, zeure Espirituaren indarrez,
oparitarako ekarri ditugun ogi ta ardao honeik,
zure Seme Jesukristo gure Jaunaren
Gorputz eta † Odol izan daitezan,
misteriook berak esanda egiten ditugun ezkero.

Berak, saldua izan zan gau haretan,
ogia hartu eta, zuri eskerrak emonez, zatitu eban,

eta bere ikasleei emon eutsen, esanez:

HARTU EIZUE TA JAN GUZTIOK HONETATIK:
HAU NEURE GORPUTZA DA-TA,
ZUENTZAT EMONGO DANA.

Afal ondoan, bardin,
Kaliza harturik eta zuri eskerrak emonez,
bedeinkatu eban eta bere ikasleei emon eutsen, esanez:

HARTU EIZUE TA EDAN GUZTIOK HONETATIK:
HAU NEURE ODOLAREN KALIZA DA-TA,
ITUN BARRI TA BETIKOAREN ODOLA,
ZUENTZAT ETA GUZTIENTZAT
PEKATUAK PARKATZEKO ISURIKO DANA.
EGIZUE HAU NEURE OROIGARRI.

**Hau da sinismenaren misterioa**
**** Ogi-ardau honeik hartzean,***
***zure heriotza dogu autortzen,***
***Zu, Jauna, etorri artean.***

Horregaitik, Jauna, guk,
zure Semearen nekaldi osasungarria
eta hilen artetik biztuerea
eta zeruratze miragarria gogoratuz,
haren azken etorrerea itxaroten dogula,
zuri eskerrak emoteko eskintzen deutsugu
opari bizi eta santu hau.

Begira, Jauna, zure Elizearen eskeintza honi:
ikus eskeintza honetan
zurekin baketu gaituen Jesukristoren oparia;
iguzu, Jauna,

zure Semearen gorputz-odolak hartzen ditugunok,
Espiritu Santuaz beterik, Jesukristogan
gorputz bat eta espiritu bat izan gaitezela.
Berak egin gaizala zuretzat betiko opari,
zure aukeratuekin zerua jaritsi dagigun:
lehenengo, Andra Maria,
Jaungoikoaren Ama beti Birjinearekin,
zure apostoluekin,
gure zaindari Santiago apostoluarekin,
eta martiri eta santu guztiekin;
ba dakigu, euron bitartez
zure laguntza izango doguna non-nahi ta beti.

Gu zurekin baketzen gaituen opari hau
izan bedi, Jauna,
mundu guztiarentzat bake ta salbamen.

Mundu honetako ibilaldian,
sinismenez ta maitasunez bete egizu zure Elizea:
zure zerbitzari **I.** gure Aita Santua, **I.**, gure Artzaina,
beste artzain eta abade guztiak eta zeurea dozun herri osoa.
Entzun, bihotz onez, zure aurrera deitu dozun
familia honen otoitzak.
Aita guztiz ona, ekarri zeugana
mundu zabalean banaturik dabiltzan zure seme-alabak.

Hildako gure senideak (**I.**, **I.**...)
eta mundu honetatik zurekin adiskide joan diren guztiak,
hartu eizuz, bihotz onez, zeure zeruan;
geuk ere sinisten dogu
zure aintzaren zorion betea izango dogula betiko,
eurekin batean.
Jesukristo gure Jaunaren bitartez:
Beronen eskuz emoten deutsozuz ondasun guztiak munduari.

HONEN BITARTEZ, HONEKIN ETA HONENGAN
ZURI, AITA, JAUNGOIKO AHALGUZTIDUN HORRI
ESPIRITU SANTUAREKIN BATEAN
OSPE TA AINTZA GUZTIA
GIZALDI TA GIZALDI GUZTIETAN. - Amen.
Salbatzaileak agindu ta irakatsiari jarraituz
bildur barik esan dagigun.

**GURE AITA** zeruetan zarana
santu izan bedi zure izena,
etor bedi zure erreinua,
egin bedi zure nahia
zeruan bezela lurrean ere.
Emoiguzu gaur
egun hontako ogia;
parkatu gure zorrak
geuk ere gure zordunei
parkatzen deutsegun ezkero;
eta ez gu tentaldira eroan,
baina atara gagizuz gatxetik.

† Atara gagizuz, Jauna, gatx guztietatik,
emoiguzu bakea gure egunotan,
zure errukiari esker pekatutik gabi bizi izan gaitezan
eta estualdietan sendo;
betiko zorionaren itxaropenean,
Jesukristo gure Salbatzailea noiz etorriko dan zain gagozela.

*—Zeurea dozu erregetza; zeureak ospe ta indarra orain eta beti.*

**BAKE ESKEINTZEA** (Abadeak)

† Jesukristo gure Jauna, zeuk esana da apostoluei 'bakea izten deutsuet, neure bakea emoten'; begira zure Elizearen sinismenari eta ez gure pekatuei, eta zeure gogoa denez, emoiozu elizeari bakea, emon batasuna, errege bizi zara-ta, gizaldi eta gizaldietan. *- Amen.*

† Jaunaren bakea beti zuekin
*—Eta zure espirituarekin.*

† Emon deiogun bakea alkarri.

Jaungoikoaren Bildotsa, zeuk kentzen dozu munduko pekatua: *Erruki, Jauna.*
Jaungoikoaren Bildotsa, zeuk kentzen dozu munduko pekatua: *Erruki, Jauna.*
Jaungoikoaren Bildotsa, zeuk kentzen dozu munduko pekatua: *emoiguzu bakea*

**JAUNARTZEA**

† Hona hemen Jainkoaren Bildotsa, hona munduko pekatua kentzen dauena: zoriontsuak honen mahaira deituak:

- JAUNA, NI EZ NAZ INOR ZU NIRE ETXEAN SARTZEKO,
BAINA ESAIZU HITZ BAT ETA OSATUKO NAZ.

**AMAIERAKO OHIKUNEAK**

**OTOITZA**

Eskerrak emoten deutsuguz, Jauna,
gure zaindari dan Santiago apostoluaren jaiegunean
hartu doguzan dohai santuekaitik;
bera laguntzaile dogula,
zaindu gagizuz beti zeure babespean.
Jesukristo gure Jaunaren bitartez. *- Amen.*

**Azken onespena**

† Jauna zuekin.
*- Eta zure espirituarekin*

† Bedeinka ta gorde gaizala Jainko ahalguztidunak:
Aitak eta Semeak eta Espiritu Santuak.
*- Amen*.

**Jaunartzerako**

¹ JESUS MAITEA ZAN azken afarian

Bera emon nahirik ardao ta ogian
guretzat zalarik hilteko aurrean
maitasunak eukan bihotza menpean.
[2] Apostoluei minez esan dautse:
«Ni gaur saldua naz, bihar hilgo nabe.
Aitarenganako denpora jat bete
Hona orain zenbat zaituedan maite».

**Gurtu daigun beti**
**Jesus Jainko Jauna**
**Sakramentu honetan**
**gurekin dagona.**